**Sarrera-oharra**

Egunon, senideok. Santiagoren omenez alkartzen gara eliz alkarte lez, gure Elizbarrutiko zaindaria omentzeko. Izan gogoan: sarritan zatiketarako erabili izan dogu gure erlijioa, eta "erlijiokeria" bihurtu izan dogu. Hurreratu gaitezan Jaunagana, eta, bere esanetara jarriz, berak bideratu daizala gure su eta gar guztiak, Santiagorenak bideratu ebazan lez.

**Sarrera-abestia**

BIHOTZ BATEZ ALKARTURIK
Zugana gatoz, Jauna; Zugana gatoz, Jauna.
Emoiguzu zure argi, grazi ta maitasuna: entzun, arren, Jauna.

**Damu-otoitza**

† Senideok: gure garra eta egingurea onerako barik sarritan banantzeko, zatiketarako, norbere probetxurako erabilten dogu, Jainkoaren nahierak alboratuta. Damuturik autortu daigun gure pekatua:

—Jesus Jauna, zure jarraitzailetzat gizon sutsuak auke*ra*tzen dozuzana. *Erruki, Jauna!*
—Jesus Jauna, gizakion sugarra gorrototik askatu eta maitasun-sugar *bi*hurtzen dozuna. *Kristo, erruki!*
—Jesus Jauna, zure ikasle gartsuak, bulartsuak eta atxaki bakoak *na*hi gaituzuna. *Erruki, Jauna!*

**Irakurgaiei oharra**

Elizeak jarten deuskuzan Jainkoaren mahai bietako lehenengora hurreratuko gara: HITZAREN MAHAIRA. Arretaz entzun daigun Jainkoak esan gura deuskuna:

**ERANTZUN-SALMOA** Sal 125, 1-2ab. 2cd-3. 4-5. 6

**R/. Negarrez erein eben; pozez batuko dabe**

**ESKARIAK**

† Jainkoaren hitz salbagarri eta su-emoiletik sortu daitezala gure eskariak, uste osoa Jainkoagan jarrita:

—Elizearen alde: bai bere artzainengan, eta baita bere seme-alaba guztiengan ere, gero ta argiago erakutsi daian sinismenaren ondasuna. *Eskatu deiogun Jaunari*.
—Sufritzen dagozan herrialdeen alde: gorrotoak erre ez daizan, eta herrialde aberatsen laguntza ta zorren parkamena lortu daiezan*. Eskatu deiogun Jaunari*.
—Sinismena ospatzeko abaderik ez dauken eliz alkarteen alde: eliz alkarte izateaz jabetu daitezan, eta alkartzea bilatu daien*. Eskatu deiogun Jaunari*.
—Gure ezinetan, une gatxetan eta nekeetan, errudunak eta atxakiak bilatu beharrean, geure erantzun apala eta eskuzabalekoa bilatu daigun*. Eskatu deiogun Jaunari*.
—Santiagoren omenez alkartu garenon alde: Jaunaren jarraitzaile eta haren barri-emoile gartsu izatea bilatu daigun, atxaki, bildur eta lotsa guztien gainetik*. Eskatu deiogun Jaunari*.

† Gure otoitzak Jesus Jaunak irakatsitakoan indar hartu daian, esan daigun gogotsu, Jesusek berak irakatsitako otoitza:

**Jaunartzerako abestia**

**Jauna dot Artzain, ez dot izango nik goserik**
**hark emongo deust zer-jan onik.**

—Neu naz zerutik lurrera jatsi dan ogia
Aitak danori eskeinia…

—Nire gorputza egiz dozue janaria

ta nire odola edaria…

—Ogi hau jaten dauana beti da biziko,
hilterik ez dau ikusiko…